# Urtean Zeharreko X. astelehena
## I. urtean
### I. IRAKURGAIA

*Jainkoak emoten deusku adore,*
*guk be besteak edozein atsekabetan adoretu ahal daiguzan.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolaren hasiera

*2 Ko* 1, 1-7

Nik, Paulok, Jainkoak halan nahirik, Jesu Kristoren apostolu nazan honek, eta Timoteo anaiak, Korinton dagoan Jainkoaren eleiz alkarteari eta Akaia probintzia osoko fededun guztioi: grazia eta bakea zuei Jainko gure Aitagandik eta Jesu Kristo Jaunagandik.

Bedeinkatua Jainkoa, Jesu Kristo gure Jaunaren Aita, Aita errukitsu eta kontsolamentu guztien iturri dan Jainkoa! Harek emoten deusku adore atsekabe guztietan, guk be besteak edozein atsekabetan adoretu ahal daiguzan, geuk Jainkoagandik hartzen dogun adoreaz.

Izan be, Kristogaitik jasan behar doguzan sufrimentuak ugari badira, ugaria da Kristok emoten deuskun adorea be. Guk atsekabeak jasaten badoguz, zuek adorea eta salbazinoa

hartu dagizuezan jasaten doguz; adorea hartzen badogu, zuek adorea hartu dagizuen hartzen dogu, adore honi esker, iraupenez eroan ahal izan dagizuezan guk geuk be eroaten doguzan sufrimentuak. Eta zuengan dogun itxaropena sendoa da, badakigu-eta gure sufrimentuetan parte dozuenok izango dozuela parte adorean be.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 34 [33], 2-3. 4-5. 6-7. 8-9 (R/. 9a)

R/. **Dastatu egizue eta ikusi zein ona dan Jauna.**

V/. Bedeinkatuko dot aldi guztietan Jauna,
nire ahoan beti haren gorespena.
Harro nago Jaunagaz,
entzun begie apalek eta poztu beitez. R/.

V/. Handietsi neugaz batera Jauna,
goratu dagigun alkarregaz haren izena.
Jaunagana jo neban, eta harek erantzun,
bildur guztietatik ninduan libratu. R/.

V/. Begiratzen deutsoenak distiratsu egongo dira,

ez jake aurpegia lotsaz gorrituko.
Dohakabeak dei egin eban, eta Jaunak entzun,
eta estualdi guztietatik eban salbatu. R/.

V/. Kanpaturik dago Jaunaren aingerua
hari begirune deutsoenen inguruan,
eta libratzen ditu.
Dastatu egizue eta ikusi zein ona dan Jauna;
zorionekoa harengan babesten dana. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Zerbitzari dau Elias Israelen Jainkoak.*

Erregeak lehenengo liburutik

*1 Erg* 17, 1-6

Egun hareetan, Galaad eskualdean egoan Tixbe herriko Elias profetak esan eutson Akab erregeari: «Ala Jauna, ni zerbitzari nauan Israelen Jainkoa! Horra, ez dau iruntzik, ez euririk egingo hurrengo urteetan, Nik aginduta ez bada».

Jaunak honan hitz egin eutson Eliasi: «Abiatu zaitez hemendik, zoaz sortalderantz eta ezkutatu zaitez Jordan ibaiaz bestaldean dagoan Kerit errekan.

Errekatik edango dozu, eta zuri han jaten emoteko agindu deutset beleei». Beraz, Elias abiatu eta, Jaunak agindu eutson lez, Jordan ibaiaz bestaldean dagoan Kerit errekan gelditu zan. Beleek ogia eta haragia ekartzen eutsoen goiz eta arratsalde, eta errekatik edaten eban.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 121 [120], 1-2. 3-4. 5-6. 7-8 (R/. Sal 124 [123], 8)

R/. **Gure laguntza Jaunaren izena,
zeru-lurren egilearena.**

V/. Mendietara ditut jasotzen begiok:
nondik etorriko ete jat laguntza?
Laguntza Jaunagandik datorkit,
zeru-lurrak egin ebazan harengandik. R/.

V/. Jaunak ez deutsu jausten itziko,
zure zaintzailea ez dago lo.
Ez da inoiz lo egoten
Israelen zaintzailea. R/.

V/. Jauna dozu zaintzaile, Jauna kerizpe,
alboan dozu beti.
Ez deutsu gatxik egingo eguzkiak egunez,
ezta iretargiak be gauez. R/.

V/. Jaunak zainduko zaitu gatx guztitik,
zainduko dau zure bizia.
Jaunak zainduko ditu zure ibilera guztiak
oraindik betiraino. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mt* 5, 12a

R/. **Aleluia.**
V/. Poztu zaiteze eta alaitu,
handia izango da-eta zuen saria zeruetan. R/.

## EBANJELIOA

*Zorionekoak gogoz behartsu diranak.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 5, 1-12

Aldi haretan, jentetza ikusirik, Jesusek mendira igon eban. Jesarri eta ikasleak inguratu jakozan. Orduan, honan hasi jaken irakasten:

«Zorionekoak gogoz behartsu diranak, ze eurena da Jainkoaren erreinua.
Zorionekoak negarrez dagozanak, ze eurak ditu Jainkoak kontsolatuko.

Zorionekoak apalak, ze eurek izango dabe agindutako lurra ondare.

Zorionekoak zuzentasunaren gose eta egarri diranak, ze eurak ditu Jainkoak aseko.

Zorionekoak errukitsuak, ze eurak ditu Jainkoak erruki izango.

Zorionekoak bihotz-garbi diranak, ze eurek ikusiko dabe Jainkoa.

Zorionekoak bakegileak, ze Jainkoaren seme-alaba izango dira.

Zorionekoak zuzentasunagaitik erasoa jasaten dabenak, ze eurena dabe Jainkoaren erreinua.

Zorionekoak zuek, Nigaitik madarikatuko zaitueenean, erasoka eta guzurrez txarto-esaka erabiliko zaitueenean. Poztu zaiteze eta alaitu, ze handia izango da zuen saria zeruetan; zuen aurreko profetak be halantxe erabili ebezan».

Jaunak esana.

______________________________________________2

# Urtean Zeharreko X. martitzena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jesus ez zan izan baten «bai» eta bestean «ez»;*

*harengan dana «bai» izan zan.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 1, 18-22

Senideok: Ondo daki Jainkoak zuei hitz egitean ez nabilela baten «bai» eta bestean «ez». Guk, Silbanok, Timoteok eta hirurok, iragarri deutsuegun Jainkoaren Seme Kristo Jesus ez zan izan baten «bai» eta bestean «ez»; harengan dana «bai» izan zan, hau da, Jainkoak baietza emon deutse harengan agintzari guztiei; horregaitik, Kristoren bitartez «Amen» esaten deutsagu Jainkoari, bera goresten dogunean.

Jainkoa da gu eta zuek Kristogan sendotzen gaituana. Harek sagaratu gaitu, bere ezaugarriaz markatu gaitu eta Espiritua ipini dau gure bihotzean, hartuko dogunaren segurtasun lez.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 119 [118], 129-130. 131-132. 133 eta 135 (R/. 135a)

R/. **Erakutsi aurpegi argia, Jauna, zeure zerbitzari honi.**

V/. Harrigarri dira zure aginduak;
horregaitik ditut gogoan gordetzen.

Argigarri da zure hitzen adierazpena,
adimena emoten deutse ezikasiei. R/.

V/. Ahoa zabaltzen dot eta arnasa hartzen,
zure aginduak biziro ditut-eta bilatzen.
Bihurtu nigana eta erruki zakidaz,
zure izena maite dabenekin egiten dozun lez. R/.

V/. Sendotu egizuz nire pausuak zeure irakaspenaz,
ez nagiala ezelako gaiztakeriak menperatu.
Erakutsi aurpegi argia zeure zerbitzari honi,
irakatsi zeure arauak. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Urun-katilua ez zan agortu,*
*Jaunak Eliasen ahoz esan eban lez.*

Erregeak lehenengo liburutik

*1 Erg* 17, 7-16

Egun hareetan, Elias profeta Kerit erreka ondoan egoan ezkutatuta. Aldi baten buruan, agortu egin zan errekea, ez eban-eta euririk egin lurralde haretan. Orduan, honan berba egin eutson Jaunak Eliasi: «Ea, zoaz Sidongo Sareptara eta gelditu zaitez bertan

bizitzen. Zuri jaten emoteko agindu deutsat hango emakume alargun bati». Sareptara joan zan Elias.

Uriko ateetara heldu zanean, emakume alargun bat ikusi eban zotzak batzen. Eliasek deitu eta esan eutson: «Ekarri egidazu ontzian ur-apur bat edateko». Bila joiala, Eliasek atzetik oihu egin eta esan eutson: «Ekarri egidazu, arren, ogi-zati bat be».

Emakumeak erantzun eutson: «Ala Jauna, zure Jainkoa! Ez dot bape ogirik; eskutada bat urun besterik ez dot katiluan, eta orio-apur bat pitxerrean; zotzak batzen nenbilen, neure semearentzat eta biontzat opil bat egin, jan eta gero hil gaitezan».

Eliasek esan eutson: «Ez bildurrik izan. Zoaz eta egin esan dozuna; baina egidazu lehenengo niri sutopiltxu bat eta ekarri egidazu. Gero, egingo dozu semearentzat eta zeuretzat. Hau dino-eta Jaunak, Israelen Jainkoak: "Urun-katilua ez da agortuko, ezta orio ontzia amaituko be, Jaunak lurrera euria bialduko dauan egunera arte"».

Joan zan, bada, emakumea eta egin eban Eliasek esana, eta luzaroan jan

eben Eliasek eta ama-semeek. Urun-katilua ez zan agortu, ezta orio ontzia amaitu be, Jaunak Eliasen ahoz esan eban lez.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 4, 2-3. 4-5. 7-8 (R/. ik. 7)

R/. **Erakutsi guri, Jauna, zeure aurpegi argitsua!**

V/. Deitzen deutsudanean, erantzun, Jainko, ene defendatzaile.
Estualdian emoidazu nasaitasun.
Erruki zakidaz eta entzun nire otoitza.
Zuek, handikiok,
noiz arte iraindu behar dozue nire ohorea?
Huskeria dozue maite
eta guzurraren atzetik zabiltze. R/.

V/. Jakizue maitasun harrigarria agertzen deustala Jaunak,
entzun egiten deustala deitzen deutsadanean.
Ikaratu zaiteze eta ez egin pekaturik;
hausnartu bihotzean, egin negar ohean.
R/.

V/. Askok dihardue esaten: «Nork emongo guri zoriona?

Aldendu egin dozu gugandik, Jauna,
zeure aurpegi argitsua!»
Niri, halan be, poz handia emon deustazu,
gariz eta ardaoz aserik dagozan horreena baino handiagoa. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mt* 5, 16

R/. **Aleluia.**
V/. Zuen argiak danen aurrean egin behar dau argi,
zuen egintza onak ikusiz,
zeruko zuen Aita goratu dagien. R/.

**EBANJELIOA**

*Zuek zarie munduaren argia.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 5, 13-16

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Zuek zarie lurraren gatza. Baina gatza gazatzen bada, zelan gazitu barriro? Ez dau orduan ezertarako balio, kanpora bota eta jenteak zapaltzeko baino.

Zuek zarie munduaren argia. Ezin

daiteke ezkutatu mendi gainean dagoan herria. Kriseilua be ez da bizten lakaripean ipintzeko, argimutilaren gainean ipintzeko baino, etxeko guztiei argi egin deien. Era berean, zuen argiak danen aurrean egin behar dau argi, zuen egintza onak ikusiz, zeruko zuen Aita goretsi dagien».

Jaunak esana.

______________________________________3

## Urtean Zeharreko X. eguaztena
## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Itun barriaren zerbitzari izateko gai egin gaitu.*
*Itun hori ez da legearen letra hutsean oinarritzen,*
*Espirituaren indarrean baino*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 3, 4-11

Senideok: Hau da Kristori esker Jainkoagan dogun konfiantza. Ez gu geurez ezertarako gai garala uste dogulako; gaitasuna Jainkoagandik datorkigu-eta; izan be, berak egin gaitu itun barriaren zerbitzari izateko gai. Itun hori ez da legearen letra hutsean oinarritzen, Espirituaren indarrean baino, legearen letrak hil egiten dau-

eta; Espirituak, barriz, bizia emoten.

Heriotzara eroian legearen zerbitzua, harlosatan letraz idatziarena hain zuzen be, aintzaz betea agertu zan, eta israeldarrek ezin eutsoen Moisesi aurpegira begiratu, erion distiragaitik, distira ha iragankorra zan arren. Ba, zenbatez aintzatsuagoa ez ete da izango Espirituagan oinarritutako itunaren zerbitzua! Gatxespenerako izan zanaren zerbitzua aintzaz betea agertu bazan, zenbatez aintzatsuagoa ez ete da izango salbazinorako danaren zerbitzua! Hain zuzen, lehen aintzaz betea zanak galdu egin dau orain aintza hori, oraingoaren aintza ezin handiagoaren aldean. Beraz, iragankor zana aintzaz betea baegoan, iraunkor danak askoz aintza handiagoa izango dau.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 99 [98], 5. 6. 7. 8. 9 (R/. ik. 9c)

R/. **Santua zara Jauna, gure Jainkoa!**

V/. Gorratu Jauna, gure Jainkoa,
ahuspeztu haren oin-aulki aurrean.
Santua da Jauna. R/.

V/. Haren abadeen artean ziran Moises eta

Aaron,
haren izenari dei egiten eutsoenen artean Samuel;
dei egiten eutsoen Jaunari, eta harek erantzun. R/.
V/. Laino-adarretik hitz egin eutsen,
eta hareek gordetzen ebezan
haren agind uak eta harek emondako legea. R/.
V/. Jauna, gure Jainkoa, Zuk Zeuk erantzuten zeuntsen;
Jainko parkabera zinan hareentzat,
nahiz eta hareen gaiztakeriak zigortu. R/.
V/. Goratu Jauna, gure Jainkoa,
ahuspeztu haren mendi santuaren aurrean.
Santua da Jauna, gure Jainkoa! R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Ikusi dagiala herri honek, Jauna, Zeu zarala Jainkoa, eta Zeuk bihurtuazoko deutsazula bihotza Zeugana.*

Erregeak lehenengo liburutik

*1 Erg* 18, 20-39

Egun hareetan, Akab erregeak israeldar guztiei dei egin eta Baalen profetak batuazo ebazan Karmel

mendian. Orduan, Eliasek herriagana hurreratu eta esan eutson: «Noiz arte ibili behar dozue soinu bitara dantzan? Jauna bada Jainkoa, jarraitu Jaunari, eta, Baal bada, jarraitu Baali».

Herriak ez eutson ezer erantzun. Eliasek, orduan: «Neu bakarrik gelditzen naz Jaunaren profeten artetik; Baalen profetak, barriz, laurehun eta berrogeta hamar dira. Ekarri deiguezala zekor bi. Aukeratu begie horreek bat, zatitu eta ezarri begie egurraren gainean, baina su emon barik. Nik gauza bera egingo dot besteagaz; egurraren gainean ezarriko dot, baina su emon barik. Zuek dei egin zeuen jainkoari, eta nik Jaunari dei egingo deutsat. Sua bialduz erantzuten dauana, ha da egiazko Jainkoa». Herri osoak erantzun eban: «Ederto esana». Orduan, Eliasek esan eutsen Baalen profeteei: «Aukeratu egizue zekorra eta prestatu zeuek lehenengo, zuek zarie-eta ugarien. Dei egin zeuen jainkoari, baina ez su emon».

Hartu eben, bada, emon eutsien zekorra, prestatu eben eta goizetik eguerdira arte Baali deika jardun eben,

esanez: «Baal, erantzun!» Han ez zan, ostera, ezelako ahotsik izan, ezta erantzungo ebanik be. Dantzan ebiltzan, egin eben altarearen inguruan.

Eguerdian burla egiten hasi jaken Elias, esanez: «Dei egizue ozenago! Jainkoa da, eta oso lanpetua egongo da edota alde egin beharra izango eban edota bidaian izango da; beharbada, lo egongo da eta iratzartu beharra izango dau». Hareek, orduan, oihu handiagoak egiten ebezan eta, ohi ebenez, ebagiak egiten ebezan buruan ezpataz eta eztenez, odola isurtzeraino.

Eguerdi ostean, euren profeta-trantzean jarraitu eben, arratsaldeko oparia eskeintzeko ordura arte; baina han ez zan ahotsik izan, ezta erantzun-arrastorik be. Orduan, esan eutson Eliasek herri osoari: «Hurreratu zaiteze nigana». Herri guztia hurreratu jakon. Barriro jaso eban Eliasek Jaunaren altarea, desegina egoan-eta, hartu ebazan hamabi harri, Jakoben –Jaunak «Israel izango dozu izena» esan eutson haren– semeen leinu bakotxeko bana, eta harri hareekin altarea jaso eutson

Jaunari. Altarearen inguru guztian hogeta hamarren bat litro hartu eikezan erretena egin eban; antolatu eban egurra, zekorra zatitu eta gainean ezarri eban. Gero, agindu eban: «Bete urez lau ontzi eta isuri erre-oparigaiaren eta egurraren gainera». Halan egin eben. Eta esan eutsen: «Bota barriro be». Halantxe egin eben. Gero, esan eutsen: «Bota hirugarrenez». Eta hirugarrenez gauza bera egin eben. Eta han joian ura altara inguru guztian, erretena betetzeraino.

Arratsaldeko oparia eskeintzeko orduan, Elias profetak aurreratu eta esan eban: «Jauna, Abrahamen, Isaaken eta Israelen Jainkoa, adierazo egizu gaur Zeu zarala Israelen Jainkoa, eta ni zure zerbitzaria nazala eta zure aginduz egin ditudala gauza honeek guztiak. Erantzun egidazu, Jauna, erantzun! Ikusi dagiala herri honek, Jauna, Zeu zarala Jainkoa, eta Zeuk bihurtuazoko deutsazula bihotza Zeugana». Orduan, Jaunak sua bialdu eta dana iruntsi eban: erre-oparigaia eta egurra, baita harriak eta errautsa be, eta erreteneko ura idortu egin eban. Hau ikustean,

herri osoa lurreraino ahuspeztu zan, esanez: «Jauna da Jainkoa! Jauna da Jainkoa!»

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 16 [15], 1-2a. 4. 5 eta 8. 11 (R/. ik. 1)

R/. **Zaindu nagizu, Jauna,**
**babes bila nator-eta Zugana.**

V/. Gorde nagizu, Jainko,
Zugan naz-eta babesten.
Hau dinotsat Jaunari: «Zeu zaitut neure Jauna». R/.

V/. Ugari dira idoloak,
hareen atzetik lehiatzen da jentea.
Nik ez deutset sakrifizioen odolik eskeiniko,
ez dot horreen izenik ezpanetan hartuko. R/.

V/. Jauna, Zeu zaitut neure ondarea, neure edontzia,
zure esku dago nire zoria.
Begi aurrean dot Jauna eten barik;
ha eskuman dodala, ez naiteke dardaratu. R/.

V/. Bizirako bidea erakutsiko deustazu;
alaitasunez beteko nozu zeure aurrean,
zorionez betiko zeure ondoan. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Sal* 25 [24], 4b. 5a

R/. **Aleluia.**

V/. Ene Jainko, erakutsi niri zeure bidezidorrak,
gidatu nagizu zeure leialtasunean. R/.

EBANJELIOA

*Ez naz Moisesen legea edota profetak baztertzera etorri,*
*euren betera eroatera baino.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 5, 17-19

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Ez uste izan Moisesen legea edota profeten esanak baztertzera etorria nazanik; ez naz baztertzera etorri, euren betera eroatera baino. Benetan dinotsuet: Zeru-lurrek iraungo daben bitartean, legearen letrarik edo zeinurik txikienak be ez dau baliorik galduko, dana bete arte. Beraz, agindurik txikienetako bat hausten dauana eta hausten irakasten, txikiena izango da zeruetako erreinuan; betetzen dauana, barriz, eta betetzen

irakasten, handia izango da zeruetako erreinuan.
Jaunak esana.

______________________________________________4

**Urtean Zeharreko X. eguena**
**I. urtean**

**I. IRAKURGAIA**

*Jainkoak berak biztu dau argia gure bihotzean,*
*Jesu Kristoren aurpegian distira egiten dauan*
*Jainkoren aintza argiro ezagutu dagigun.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 3, 15–4, 1. 3-6

Senideok: Gaur arte, Moisesen liburuak irakurtzen dabezanean, zapi batek estaltzen deutse adimena israeldarrei. Nor edo nor Jaunagana bihurtzean bakarrik kenduko jako estalkia. Izan be, Jauna Espiritua dalako, eta Jaunaren Espiritua non, askatasuna han. Guk guztiok, aurpegia agirian dogula, Jaunaren aintza islatzen dogu, eta haren irudira gabiltz erabarritzen, gero eta distiratsuago bihurtuz, Espiritua dan Jaunak eraginda.

Horregaitik, apostolu-zerbitzu hau Jainkoak bere errukiaz emon deuskula jakinik, ez dogu kemenik galtzen. Guk

iragartzen dogun Barri Ona ilun geratzen bada, galtzen diranentzat geratzen da ilun, sinisbakoentzat hain zuzen be; Satanasek, mundu honetako jainkoak, itsutu egin deutse adimena, Jainkoaren irudi dan Kristoren aintzazko Barri Onaren argi distiratsua ikusi ez dagien.

Ez gabiltz geure burua predikatzen, Jesu Kristo Jauna dala baino, eta gu ez gara zuen zerbitzari besterik Jesusenganako maitasunagaitik. «Distiratu begi argiak ilunpean» esan eban Jainkoak berak biztu dau argia gure bihotzean, Jesu Kristoren aurpegian distira egiten dauan Jainkoaren aintza argiro ezagutu dagigun.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 85 [84], 9ab eta 10. 11-12. 13-14 (R/. ik. 10b)

R/. **Gure lurraldean kokatuko da Jaunaren aintza.**

V/. Entzungo dot Jainkoak dinoana:
Jaunak bakea agintzen deutse bere herriari eta fededunei.
Hurrean dabe salbazinoa begirune

deutsoenek;
bai, gure lurraldean kokatuko da Jaunaren aintza. R/.

V/. Maitasunak eta leialtasunak alkar dabe aurkitzen,
justiziak eta bakeak alkar besarkatzen.
Leialtasuna lurretik da ernetzen,
justizia zerutik jaisten. R/.

V/. Jaunak emongo dau euria,
eta gure lurrak ekarriko bere uzta.
Haren aurretik joango da justizia,
haren pausuei jarraituko deutse ondoizateak. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Eliasek otoitz egin,*
*eta zeruak euria egin eban.*

Erregeak lehenengo liburutik

*1 Erg* 18, 41-46

Egun hareetan, Elias profetak esan eutson Akab erregeari: «Zoaz jatera eta edatera, euri-jasa handi baten hotsa entzuten da-eta». Halan, Akab jatera eta edatera joan zan. Bitartean, Elias Karmel mendiaren gailurrera igon eta lurrera makurtu zan, aurpegia belaun artean jarriz.

Orduan, agindu eutson bere mutilari: «Igon eta begira itsasaldera». Igon eban mutilak, begiratu eta esan eban: «Ez da ezer agiri». Eliasek zazpi bider agindu eutson bihurtzeko. Zazpigarrenean morroiak esan eban: «Esku-arra beteko hodei koskor bat dator itsasaldetik!» Orduan, Eliasek esan eutson: «Zoaz eta esan Akabi atontzeko gurdia eta jaisteko, euriak bidea itxi baino lehen».

Zerua gero eta ilunago jarri zan, hodeien eta haizearen eraginez, eta izugarrizko euri-jasa bota eban. Akab gurdira igon eta Izreelera joan zan. Elias, Jaunaren indarrak bultzatuta, jantzia garrian lotu eta arin-arinka joan zan Akaben aurretik Izreeleraino.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 65 [64], 10abcd. 10e-11. 12-13 (R/. 2a)

R/. **Oi Jainko, gorespena zor jatzu Sionen.**

V/. Zuk dozu lurra zaintzen, urez asetzen
eta oparo aberasten.
Urez gainezka doa zeruko ubidea;
Zuk emoten deutsazu gizakiari gari-

garaua. R/.

V/. Zuk prestatzen lurra honan:
erretenak ureztatu, mokilak bardindu,
euri-zaparradez harrotu, ernekimuak bedeinkatu. R/.

V/. Zeure ondasunez burutzen dozu urtea,
joritasuna dariela dagoz zure bideak.
Heze eta jori dagoz landa zabalak,
alaitasunez apaindurik mendi-hegalak. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Jn* 13, 34

R/. **Aleluia.**

V/. Agindu barria emoten deutsuet, dino Jaunak:
maitatu dagizuela alkar,
Nik maite izan zaituedan lez. R/.

### EBANJELIOA

*Bere senideagaz hasarratzen dana errudun izango da auzitegian.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 5, 20-26

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Jainkoaren nahia lege-maisuek eta fariseuek baino hobeto

betetzen ez badozue, ez zarie sartuko zeruetako erreinuan.

Entzunda daukazue antxinakoei agindua: “Ez hil inor”, eta norbait hiltzen dauana errudun izango da auzitegian. Nik, ostera, hauxe dinotsuet: Bere senideagaz hasarretzen dana errudun izango da auzitegian; senideari “zoroa” esaten deutsana errudun izango da batzar nagusian, eta “sinistebako” esaten deutsana infernuko surtarako errudun izango da.

Halandaze, zeure oparia altarean eskeintzean, gogoratzen bajatzu zure senideak badauala zer edo zer zure aurka, itzi oparia han bertan, altara aurrean, eta zoaz lehenengo senideagaz bakeak egitera; etorri orduan eta eskeini zeure oparia.

Konpondu zaitez lehenbailehen zeure arerioagaz, berarekin auzitegira zoazen bitartean, arerioak epailearen esku jarri ez zagizan, eta epaileak ertzainaren esku, eta giltzapean sartu ez zagiezan. Benetan dinotsut: Ez dozu handik urtengo, harik eta azken txanpona ordaindu arte».

Jaunak esana.

# Urtean Zeharreko X. barikua

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Jesus Jauna biztu dauanak biztuko gaitu geu be Jesusegaz,*
*eta haren ondoan ipiniko gaitu zuekin batera.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 4, 7-15

Senideok: Altxor baliotsu hau buztinezko ontzian daroagu, argi agertu dadin honenbesteko indarra Jainkoagandik datorrela, eta ez gugandik. Alde guztietatik estutzen gaitue, baina zapaltzen ez; larri gagoz, baina lur jota ez; erasopean bai, baina eskutik itzita ez; lurrera botatzen gaitue, baina hondatzen ez; nonahi eta beti Jesusen heriotza daroagu geugan, Jesusen bizia be gugan agertu dadin.

Bizi garan bitartean, beti heriotzara garoez Jesusengaitik, gure izate hilkor honetan Jesusen bizia be agertu dadin.

Hau dino Liburu Santuak: «Sinistu neban, eta horregaitik hitz egin neban». Guk be, sinismen-espiritu bera dogula, sinisten dogu eta horregaitik hitz egiten

dogu, jakinik, Jesus Jauna biztu dauanak biztuko gaituala geu be Jesusegaz, eta haren ondoan ipiniko gaituala zuekin batera. Hau guztia zuen onerako da, Jainkoaren dohaia askorengana zabaltzean, esker ona be ugaritu dadin, Jainkoaren aintzarako.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 116 [115], 10-11. 15-16. 17-18 (R/. 17a)

R/. **Gorespen-oparia deutsut, Jauna, eskeiniko.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Sendo nengoan fedean,
«Ni bai zoritxarreko» esatean be.
Hau esan neban neure larrialdian:
«Gizaki guztiak guzurti dira». R/.

V/. Mingarri jako Jaunari
bere fededunen heriotza.
Bai, zure zerbitzari naz, Jauna,
zure zerbitzari ezereza,
askatu dozuz nire kateak. R/.

V/. Gorespen-oparia deutsut eskeiniko
eta Jaunaren izenari dei egingo.
Beteko deutsadaz Jaunari agindutakoak,
herri guztiaren aurrean. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Zagoz zutunik mendian, Jaunaren aurrean.*

Erregeak lehenengo liburutik

*1 Erg* 19, 9a. 11-16

Egun hareetan, Elias Horebera, Jainkoaren mendira, etorri eta hango hatx-zulo baten gelditu zan. Jaunak esan eutson: «Urten eta zagoz zutunik mendian, Jaunaren aurrean; Jauna igaroko da».

Jaunaren aurretik haize zakar indartsuak jo eban, mendiak urratzen eta harriak zartatzen ebazala; baina Jauna ez egoan haizean. Haizearen ondoren, lurrikara izan zan; baina Jauna ez egoan lurrikaran. Lurrikararen ondoren sua; baina Jauna ez egoan suan. Suaren ondoren haize fin baten hotsa.

Entzun ebanean, Eliasek aurpegia estaldu eban soingainekoaz; gero, urten eta zutunik gelditu zan hatx-zulo aurrean, eta ahots batek esan eutson: «Zertan zagoz hor, Elias?» Eliasek erantzun: «Jauna Jainko ahalguztiduna, Zuganako maiteminak erretzen nau,

israeldarrek Zugazko ituna bazterrera itzi dabelako, zure altarak hondatu eta zure profetak ezpataz hil dabezalako. Neu bakarrik gelditu naz, eta nire bila be badabiltz hiltzeko».

Jaunak esan eutson: «Tira, bihurtu zaitez zeure bidetik, basamortuan zehar, Damaskoraino. Hara heltzean, igurtzi Hazael Siriako errege; igurtzi Jehu, Nimxiren semea, Israelgo errege, eta igurtzi Eliseo, Xafaten semea, Abel-Meholakoa, zeure ondorengo profeta».

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 27 [26], 7-8b. 8c-9c. 13-14 (R/. 8b)

R/. **Zure aurpegi bila nabil, Jauna.**

V/. Entzun, Jauna, nire dei-hotsa,
erruki zakidaz eta erantzun.
Bihotzak esaten deust:
«Bilatu egizu haren aurpegia». R/.

V/. Zure aurpegi bila nabil, Jauna,
ez ezkutatu niri zeure aurpegia.
Ez baztertu zeure zerbitzari hau hasarre,
Zu zaitut-eta laguntza. R/.

V/. Ziur dakit Jaunaren ontasuna gozatuko dodala

bizidunen lurrean.
Itxaron Jaunagan!
Eutsi gogor, izan bihotz!
Itxaron Jaunagan! R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Flp* 2, 15d-16a

R/. **Aleluia.**

V/. Izarrek munduan lez egiten dozue argi gizarte honetan,
bizia emoten dauan mezuari eutsiz. R/.

## EBANJELIOA

*Emakumeari gurari biziaz begiratzen deutsanak egin dau adulterioa bere bihotzean.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 5, 27-32

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Entzun dozue antxinakoei agindua: "Ez egin adulteriorik". Nik, barriz, hauxe dinotsuet: Emakumeari lizunkeriaz begiratzen deutsanak egin dau jadanik adulterioa bere bihotzean.

Eskumako begia galbide bajatzu, atara eta bota zeugandik urruti: hoba dozu gorputz-atal bat galdu, oso-osorik infernura jaurtia izan baino. Eskumako

eskua galbide bajatzu, ebagi eta bota zeugandik urrun: hoba dozu gorputz-atal bat galdu, oso-osorik infernura joan baino.

Agindua dago beste hau be: “Emaztea izten dauanak emon deiola dibortzio-agiria”. Nik, ostera, hauxe dinotsuet: Bere emaztea izten dauanak –legez kontra alkartuak ez badira behintzat– adulteriora bultzatzen dau emaztea; eta itzitako emakumeagaz ezkontzen danak adulterioa egiten dau.

Jaunak esana.



# Urtean Zeharreko X. zapatua

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Pekatuagaz zerikusirik ez eban ha,*
*Jainkoak gugaitik pekatu bihurtu eban.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 5, 14-21

Senideok: Kristoren maitasunak behartzen gaitu, jakinik bat danakaitik hil dala eta, ondorioz, danak hil dirala. Kristo danakaitik hil da, bizi diranak ez daitezan eurentzat bizi, eurakaitik hil

eta biztu dan harentzat baino.

Beraz, hemendik aurrera guk ez dogu inor giza ikuspegi hutsez balioztatuko; eta inoiz Kristo giza ikuspegi hutsez balioztatu izan badogu be, orain ez dogu halan egiten. Beraz, Kristorena dana sorkari barri da; zaharrarenak egin dau, barria sortu da. Hau guztia Jainkoagandik dator, Kristoren bitartez beragaz adiskidetu gaitualako, eta adiskidetzeko zerbitzua geuri emon deusku. Izan be, Jainkoa ebilen Kristogan mundua beragaz adiskidetzen, gizon-emakumeei pekatuen kontua eskatu barik, eta geuri emon deusku adiskidetzearen mezua.

Senideok: Kristoren mandatari gara, eta gure bitartez Jainkoak berak erregutuko baleutsue lez da. Kristoren izenean eskatzen deutsuegu: adiskidetu zaiteze Jainkoagaz. Pekatuagaz zerikusirik izan ez eban ha, Jainkoak gugaitik pekatuagaz bat egin eban, guk haren bitartez Jainkoaren salbazinoa lortu gengian.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 103 [102], 1-2. 3-4. 8-9. 11-12 (R/. 8a)

R/. **Bihozbera eta errukiorra da Jauna.**

V/. Bedeinkatu begi nire arimak Jauna,
nire barru osoak haren izen santua.
Bedeinkatu begi nire arimak Jauna,
ez bedi ahaztu haren mesedeaz. R/.

V/. Erru guztiak deutsuz parkatzen,
gatx guztiak osatzen;
zure bizia hilobitik askatzen dau,
maitasunez eta errukiz koroatzen zaitu. R/.

V/. Bihozbera eta errukiorra da Jauna,
hasarregatxa eta onginahiz betea.
Ez dabil eten barik auzitan,
ez dau hasarrea betiko gordetzen. R/.

V/. Zelan zerua lurraren gainean garai,
halan haren maitasuna begirune deutsoenentzat handi;
zelan sortaldea sartaldetik urrun,
halan ditu harek gure hobenak gugandik urruntzen. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Eliseok jagi eta Eliasi jarraitu eutson.*

Erregeak lehenengo liburutik

*1 Erg* 19, 19-21

Egun hareetan, joan zan Elias

menditik, eta Eliseo, Xafaten semea, aurkitu eban goldean; hamabi idi-pare ebazan aurrean, berak hamabigarrena eroiala. Ondotik igarotzean, Eliasek bere soingainekoa bota eutson gainera. Eliseo, orduan, idiak itzirik, Eliasen atzetik joan zan arin-arin eta esan eutson: «Itzi egidazu, arren, aitari eta amari agur esaten, eta jarraituko deutsut gero». Eliasek esan eutson: «Zoaz, baina bihurtu. Badakizu zer egin deutsudan».

Joan zan Eliseo, idi-parea hartu eta oparitzat hil eban; buztarriaz su egin, haragia erre eta jaten emon eutson jenteari. Gero jagi eta Eliasi jarraitu eutson, haren zerbitzura jarriz.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 16 [15], 1-2a eta 5. 7-8. 9-10 (R/. ik. 5a)

R/. **Zeu zara, Jauna, nire ondarea.**

V/. Gorde nagizu, Jainko,
Zugan naz-eta babesten.
Hau dinotsat Jaunari: «Zeu zaitut neure Jauna».
Jauna, Zeu zaitut neure ondarea, neure

edontzia,
zure esku dago nire zoria. R/.
V/. Bedeinkatzen dot Jauna, aholku deusteta emoten,
gauez be berak dau nire barrua hezten.
Begi aurrean dot Jauna eten barik;
ha eskuman dodala, ez naiteke dardaratu. R/.
V/. Horregaitik, alai dot bihotza, pozik erraiak,
atsedenean nasai gorputza.
Ez dozu-eta nire bizia Herio-lezara jaurtiko,
ezta be zeure fededuna hilobian galtzen itziko. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Sal* 119 [118], 36a. 29b

R/. **Aleluia.**
V/. Makurtu nire bihotza, ene Jainko, zeure aginduetara,
eta emoidazu zeure legea dohaitzat. R/.

## EBANJELIOA

*Nik hau dinotsuet: Ez egin ezelako zinik.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 5, 33-37

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Entzun dozue antxinakoei agindu jakena: "Ez egin guzurrezko zinik", eta “bete Jaunari egindako zinak”. Nik, ostera, hauxe dinotsuet: Ez egin ezelako zinik, ez zeruagaitik ze, Jainkoaren tronua da; ez lurragaitik, haren oin-aulkia da-eta; ezta Jerusalemengaitik be, Errege handiaren uria da-eta. Ez egin zinik zeure buruagaitik be, ze ezin zeinke zeure ule bakar bat be zuri edo baltz bihurtu.

Zuek esan egizue “bai”, bai danean, eta “ez”, ez danean; gainerakoa gaiztoagandik dator».

Jaunak esana.